# Urtean Zeharreko XXVI. astelehena

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Neuk salbatuko dot neure herria,*
*sortaldeko eta sartaldeko lurraldeetatik.*

Zakariasen Profezia liburutik

*Za* 8, 1-8

Egun hareetan, honan berba egin eban Jaun ahalguztidunak:
«Hau dino Jaun ahalguztidunak:
"Maitasun minberaz maite dot Sion,
maitasun-garretan nago beragaitik".

Hau dino Jaunak:

"Bihurtuko naz Sionera,
Jerusalemen erdian naz biziko;
Jerusalemi 'Uri leial' deituko deutsoe,
Jaun ahalguztidunaren Sion mendiari 'Mendi santu' ".

Hau dino Jaun ahalguztidunak:

"Barriro be jesarriko dira adineko gizon-emakumeak
Jerusalemgo plazetan,
nork bere makila eskuan, zaharraren

zaharrez;
uriko kaleak neska-mutikoz beteko dira,
plazetan jolasean".

Hau dino Jaun ahalguztidunak:

"Egun hareetan,
herri honetan bizirik geldituek
hori ezinezkotzat joko badabe be,
ez da niretzat ezinezko izango".

Hau dino Jaun ahalguztidunak:

"Neuk salbatuko dot neure herria,
sortaldeko eta sartaldeko lurraldeetatik ekarriko ditut,
eta Jerusalemen erdian biziko dira.
Neure herri izango ditut Nik,
eta euren Jainko izango nabe hareek,
leialtasunez eta zuzentasunez"».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 102 [101], 16-18. 19-21. 29 eta 22-23 (R/. ik. 17)

R/. **Eraiki dau Jaunak barriro Sion**
**eta bera aintzaz betea agertu da.**

V/. Begirune izango deutsoe nazinoek Jaunaren izenari,

lurreko errege guztiek haren aintzari,
Jaunak Sion barriro eraikitzean
eta bera aintzaz betea agertzean.
Bihurtuko da zapalduaren otoitzera,
ez dau gitxietsiko honen eskaria. R/.

V/. Bego hau idatzirik hurrengo gizaldiarentzat,
eta sortu zorian dagoan herriak goratuko dau Jauna.
Jaunak bere santutegi garaitik begiratu dau,
zerutik lurrera begiratu,
katiguen aieneak entzuteko
eta heriotzara kondenatuak askatzeko. R/.

V/. Zure zerbitzarien seme-alabak seguru biziko dira,
hareen ondorengoek iraungo dabe zure aurrean.
Iragarri dagiela Sionen Jaunaren izena,
Jerusalemen haren gorespena,
herriak euren erregeakaz batera
Jauna gurtzera batuko diranean. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jaunak emon deust, Jaunak kendu.*
*Bedeinkatua Jaunaren izena!*

Job liburutik

*Jb* 1, 6-22

Behin baten, Jaunaren aurrera aurkeztu ziran Jainkoaren zeruko zerbitzariak, eta Satan be han zan. Jaunak esan eutson Satani: «Nondik hator?» Harek erantzun: «Hara eta hona ibili naz munduan zehar».

Jaunak itaundu eutson: «Ikusi dok Job nire zerbitzaria? Ez jok parekorik munduan: gizon zintzoa eta zuzena, Jainkoa errespetatzen dauana eta gaiztakeriatik urrun dabilena».

Satanek erantzun eutson: «Hutsaren truke errespetatzen zaituala uste dozu? Ez ete dozuz, ba, zeuk babesten bera, beraren etxea eta daukan guztia? Egiten dauan guztia bedeinkatzen deutsazu, eta aziendak ugaritzen doakioz herrialdean. Baina luzatu eskua eta ikutu egizuz haren ondasunak; baietz madarikazinoa bota aurpegira!»

Jaunak esan eutson Satani: «Ondo jagok! Heure esku dituk haren ondasun guztiak, baina ez, gero, bera ikutu». Eta urten eban Satanek Jaunaren aurretik.

Egun baten, Joben seme-alabek bazkaltzen egozan anaia zaharrenaren

etxean. Etorri jakon mezulari bat Jobi eta esan eutson: «Idiek goldean ziharduen eta astemeak larrean inguruan. Sabeo-talde batek bat-batean etorri, morroiak ezpataz hil eta ganadua eroan dau. Neuk bakarrik ihes egin ahal izan dot, zuri barri emoteko».

Berbetan ebilen bitartean, beste bat etorri zan eta esan eutson: «Tximista jausi da zerutik, eta ardiak eta artzainak kiskaldu ditu. Neuk bakarrik ihes egin ahal izan dot, zuri barri emoteko».

Harek amaitu baino lehen, beste bat etorri zan eta esan eutson: «Kaldear batzuek, hiru taldetan, zure gameluei eraso deutsie eta eroan egin dabez, eta morroiak ezpataz hil. Neuk bakarrik ihes egin ahal izan dot, zuri barri emoteko».

Oraindino berbetan ebilela, beste bat etorri zan eta esan eutson: «Zure seme-alabak anaia zaharrenaren etxean bazkaltzen egozala, basamortutik etorritako haize-eraso gogorrak lau aldeetatik astindu dau etxea. Etxea jausi eta danak hil dira. Neuk bakarrik ihes egin ahal izan dot, zuri barri

emoteko».

Orduan, jagi, bere jantzia urratu eta ulea zehatz ebagi eban Jobek. Gero, lurreraino ahuspeztu eta esan eban:

«Biluzik urten neban amaren sabeletik,
biluzik bihurtuko naz lurraren sabelera.
Jaunak emon deust eta Jaunak kendu.
Bedeinkatua Jaunaren izena!»

Horretan guztian, Jobek ez eban pekaturik egin eta ez eutson Jainkoari bidebakokeriarik bota.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 17 [16], 1. 2-3. 6-7 (R/. 6b)

R/. **Bihurtu nigana belarria, entzun nire berbea.**

V/. Entzun, Jauna, nire justizi eskea,
aditu nire deadarra;
makurtu belarria nire otoitzera,
ez dot engainurik ezpanetan. R/.

V/. Emon egizu nire aldeko epaia,
ikusi begie zure begiek nire zuzentasuna.
Aztertu nire barrua, ikertu gauez be,
probatu suaz; ez dozu nigan okerrik

aurkituko;
nire ahoak ez dau huts egin. R/.

V/. Deika nozu, Jainko, erantzuten deustazu-eta;
bihurtu nigana belarria, entzun nire berbea.
Agertu egizu zeure maitasun harrigarria,
erasotzaileengandik salbatzen dozuz-eta
zure esku ahaltsuan babesten diranak. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mk* 10, 45

R/. **Aleluia.**

V/. Gizonaren Semea besteen zerbitzari izatera etorri da,
eta bere bizia danen alde ordainsari emotera. R/.

### EBANJELIOA

*Zuetan txikiena, horixe da handiena.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 9, 46-50

Aldi haretan, eztabaida sortu zan

ikasleen artean, nor ete zan euretarik handiena.
Jesusek igarri egin eutsezan euren burutazinoak eta, umetxu bat hartu, euren ondoan jarri eta esan eutsen: «Ume hau nire izenean onartzen dauanak Neu onartzen nau, eta Ni onartzen nauanak bialdu nauan berbera onartzen dau. Ze, zuen artean txikiena, horixe da handiena».

Esan eutson orduan Joanek: «Maisu, gizon bat ikusi dogu zure izenean deabruak botatzen, eta galazo egin gura izan deutsagu, ze, ez da gure taldekoa».

Baina Jesusek erantzun eutson: «Ez galazo, ze, zuen aurka ez dagoana zuen alde dago».

Jaunak esana.

---
2

## Urtean Zeharreko XXVI. martitzena
### I. urtean

**I. Irakurgaia**

*Herri asko etorriko da Jerusalemera Jaunaren bila.*

Zakariasen Profezia liburutik

*Za* 8, 20-23

Hau dino Jaun ahalguztidunak: «Etorriko dira oraindino Jerusalemera herriak eta uri handietako bizilagunak; uri batekoak bestekoengana joan eta esango deutsie: "Goazen Jaunaren bila, Jaun ahalguztidunaren mesedea eskatzera". Eta erantzungo deutsie: "Bagoaz gu be". Herri asko eta nazino indartsuak etorriko dira Jerusalemera Jaun ahalguztidunaren bila eta Jaunari mesede eske».

Hau dino Jaun ahalguztidunak: «Egun hareetan, hizkuntza arrotz bakotxeko hamar gizonek soineko-ertzetik judegu bati heldu eta esango deutsoe: "Zuekin goaz gu be, Jainkoa zuekin dala jakin dogu-eta"».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 87 [86], 1-3. 4. 5. 6-7 (R/. ik. Za 8, 23)

R/. **Jainkoa gurekin da.**

V/. Horra, mendi santuaren gainean oinarrituriko uria!
Jaunak Sion uria maiteago,
Israelgo beste bizitoki guztiak baino.
Bai ospetsu berba egiten dabela zutaz,
Jainkoaren uri! R/.

V/. «Neure sinisleen arteko
autortuko ditut Egipto eta Babilonia;
Filistea, Tiro eta Etiopiako biztanleak
han jaioak dira danak». R/.
V/. Eta Sion uriaz esango da:
«Han jaioak dira danak;
Goi-goikoak dau ha sendo ezarri». R/.
V/. Hona, Jaunak herrien zerrendan idatzi:
«Han jaioak dira honeek guztiak».
Eta dantzan eginez kantatuko dabe:
«Guztiek, Sion, zugan bizilekua». R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Zergaitik emon argia dohakabeari?*

Job liburutik

*Jb* 3, 1-3. 11-17. 20-23

Ahoa zabaldu eta jaio zaneko eguna madarikatu eban Jobek, esanez:
«Madarikatua jaio nintzaneko eguna
eta "gizaseme bat sortu da" esan ebeneko gaua!
Zergaitik ez ete nintzan hil amaren sabelean?
Zergaitik ez ete nintzan ito jaiotzean bertan?
Zergaitik jaso ninduan amaren altzoak
eta bularrek esnea emon?

Nasai egongo nintzatekean orain, atsedenean lo,
eurentzat panteoiak eraikitzen dabezan
munduko erregeekin eta kontseilariekin batera,
urrearen jaube diran printzeekin,
euren hilobiak zidarrez betetzen dabezanekin.
Sein-galdua lez, ez nintzatekean izan be egingo,
argirik ikusi ez daben umeen pareko.
Hor amaitzen da gaiztoen zalaparta,
hor aurkitzen atseden indarrik barik geldituek.

Zergaitik emon argia dohakabeari,
zergaitik bizia atsekabea besterik ez dabenei?
Heriotzaren zain dagoz, eta ez jake etortzen,
altxorrak bilatzen diran baino gurari handiagoz bilatu arren.
Pozez zoratuko litzatekez, hilobia aurkituko balebe.
Zertako dau bizia nondik jo ez dakian gizakiak,
Jainkoak urteera guztiak ixten

deutsozala?»
Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 88 [87], 2-3. 4-5. 6. 7-8 (R/. 3a)

R/. **Heldu bekizu, Jauna, nire otoitza.**

V/. Jauna, ene Jainko salbatzailea,
gau eta egun deadar egiten deutsut.
Heldu bekizu nire otoitza,
makurtu belarria nire garrasira. R/.

V/. Zoritxarrez asea dot barrua,
Herio-lezearen ertzean neure bizia;
zulora doazenakaz nabe lerrotu,
guztiz nago indarbakotuta. R/.

V/. Heriotzaren esku nago itzita,
hilobian dagozan hildakoak lez;
ez zara gehiago hareetaz gogoratzen,
ataratakoak izan dira-eta zure eskutik. R/.

V/. Zulo sakonera jaurti nozu,
Barru-barruko ilunpeetara.
Zama astuna dot gainean zure hasarrea,
zeure atsebake-itsasoan murgiltzen nozu. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mk* 10, 45

R/. **Aleluia.**
V/. Gizonaren Semea besteen zerbitzari izatera etorri da,
eta bere bizia danen alde ordainsari emotera. R/.

## EBANJELIOA

*Jerusalemera joateko erabagia hartu eban.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 9, 51-56

Jesusek, mundu honetatik eroana izateko sasoia etorkiola, Jerusalemera joateko erabagia hartu eban. Mandatariak bialdu zituan aurretik, eta Samariako herri baten sartu ziran, Jesusi ostatua prestatzera. Baina herrikoek ez eben hartu gura izan, Jerusalemera joialako.

Hori ikusirik, Santiago eta Joan ikasleek esan eutsoen: «Jauna, aginduko dogu zerutik sua jatsi eta kiskaldu dagizala?» Baina Jesusek, hareekana bihurturik, agiraka egin eutsen. Gero beste herri batera joan ziran.

Jaunak esana.

# Urtean Zeharreko XXVI. eguaztena
## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Errege jauna, ondo baderixozu,*
*bialdu nagizu nire gurasoen urira,*
*barriro eraiki dagidan.*

Nehemias liburutik

*Ne* 2, 1-8

Artaxerxesen erregealdiko hogeigarren urtean, Nisan hilean, nik, Nehemiasek, erregearen ardaozain nintzala, ardaoa hartu eta erregeari eskeini neutsan. Ni ez nintzan ilun agertu ordura arte haren aurrean. Erregeak itaundu eustan: «Zergaitik aurpegi ilun hori? Ez dozu gaixo-itxurarik; zuk bihotzeko nahigaberen bat dozu».

Ikaragarri bildurtu nintzan, eta erantzun neutsan erregeari: «Bizi bedi erregea beti! Zelan ez egon nahigabetuta, nire gurasoak hilobiratuta dagozan uria hondatuta eta hango ateak suak kiskalduta dagozala?»

Orduan, erregeak esan eustan: «Zer nahi dozu, ba?» Zeruko Jainkoari otoitz egin ondoren, erantzun neutsan

erregeari: «Errege jauna, ondo baderitxozu eta zeure gogoko banozu, bialdu nagizu Judara, nire gurasoak hilobiratuta dagozan urira, barriro eraiki dagidan».

Erregeak, erregina aldamenean jesarrita ebala, itaundu eustan: «Zenbat iraungo dau zure joan-etorriak? Noizko bihurtuko zara?» Ontzat emon eban erregeak jarri neutsan epea, eta joaten itzi eustan.

Gero, esan neutsan: «Errege jauna, ondo baderitxozu, emon egidazuz agiriak, Eufrates ibaiaren sartaldeko gobernarientzat, Judarainoko bidea libre itzi deiden; eta beste agiri bat Asafentzat, erregearen basozainarentzat, zura emon deidan, tenpluaren ondoko gotorlekuko eta uriko harresietako ateak egin eta neure etxebizitza jasotzeko». Eskatutako guztia emon eustan erregeak, Jainko ona lagun neban-eta.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 137 [136], 1-2. 3. 4-5. 6 (R/. ik. 6a)

R/. **Nire mihina ahosabaian itsatsi**

**bekit,**
**zutaz gogoratu ez banendi.**
V/. Babiloniako ibaiertzean jesarrita gengozan negarrez,
Sionen oroipenez.
Ur ondoko sahatsetan
itziak geunkazan zitarak dingilizka. R/.
V/. Han, erbesteratu ginduezanak kantu eske geunkazan,
gure zapaltzaileak kanta alaien eske:
«Kanta guretzat Siongo kantak». R/.
V/. Zelan kantatu Jaunaren kantarik
atzerriko lurraldean?
Jerusalem, zutaz ahaztu banendi,
gelditu bekit eskua elbarri. R/.
V/. Itsatsi bekit mihina ahosabaian,
zutaz gogoratzen ez banaz,
niretzat pozbiderik bikainena
Jerusalem ez bada. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Gizakiak ez dau arrazoi Jainkoaren kontra.*

Job liburutik

*Jb* 9, 1-12. 14-16

Jobek esan eutsen bere adiskideei:
«Bai, badakit benetan holan dala,
gizakiak ez dauala arrazoi Jainkoaren

kontra;
haregaz eztabaidan hasi nahi badau,
milatik behin ezin izango deutsola erantzun.
Jakituriaz eta indarrez horniduta egonda be,
nork egingo deutso aurre eta kalterik barik gelditu?
Mendiak, ohartu barik, tokiz aldatzen ditu berak,
iraultzen ditu bere hasarrean;
lurra bere oinarrietan astintzen dau,
eusten deutsoen zutabeak dardaratuazoz.
Harek agindu ezkero, eguzkiak ez dau urteten,
izarrak ezkutuan izten ditu.
Berak bakarrik zabaltzen ditu zeruak
eta oinpean hartzen itsasoko uhinak.
Berak sortzen ditu konstelazinoak
eta ortziko izar-multzo guztiak.
Ulermena gainditzen daben mirariak egiten ditu,
gauza harrigarriak, ezin konta ahala.

Nire ondora etortzen bada be, ez dot ikusten;
ondo-ondotik igarotzen bada be, ez naz

ohartzen.
Zeozer hartzen badau, nork esan bihurtzeko?
Nork esango berari: "Zertan diharduzu?"
Neu izango ete naz, bada, erantzungo deutsona?
Neuk aurkituko ete argudioak beraren aurka?

Arrazoi baneu be, ez neuskio erantzungo,
neure salatzaileari erregutu egin beharko neuskio;
nik dei egin eta harek erantzungo baleust be,
ez dot uste nire erreguari jaramon egingo leuskionik».

Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 88 [87], 10b-11. 12-13. 14-15 (R/. 3a)

R/. **Heldu bekizu, Jauna, nire otoitza.**

V/. Egun osoan Zuri deika nago, Jauna,
eskuak luzatuz Zugana.
Egingo ete dozu miraririk hildakoen alde?
Jagiko ete dira kerizpeak Zu gorestera?

R/.

V/. Iragartzen ete dabe hilobian zure maitasuna,
hondamen-lezan zure leialtasuna?
Ezagutzen ete dabez zure mirariak ilunpean,
zure salbazino-asmoa gogorapenik bako lurraldean? R/.

V/. Baina nik, Jauna, deadar Zuri,
goiz-goizetik doa Zugana nire otoitza.
Jauna, zergaitik nozu baztertzen,
zergaitik deustazu aurpegia gordetzen? R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Flp* 3, 8-9

R/. **Aleluia.**

V/. Dana galdu neban
eta dana zaborraren pareko jotzen dot,
Kristo irabaztearren eta haregaz bat eginda bizitzearren. R/.

## EBANJELIOA

*Edonora jarraituko deutsut.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 9, 57-62

Aldi haretan, Jesus eta ikasleak bidean joiazala, batek esan eutson Jesusi: «Edonora jarraituko deutsut». Jesusek erantzun eutson: «Lukiek baditue zuloak eta zeruko hegaztiek habiak; Gizonaren Semeak, ostera, ez dauka burua non ezarririk».

Beste bati esan eutson: «Jarraitu Niri». Baina harek erantzun: «Jauna, itzi eidazu lehenago neure aitari lur emotera joaten». Jesusek erantzun eutson: «Itzi hildakoei euren hildakoei lur emoten; zu zoaz Jainkoaren erreinua iragartzera».

Beste batek, barriz, esan eutson: «Jarraituko deutsut, Jauna, baina itzi eidazu lehenago etxekoei agur egiten». Jesusek erantzun eutson: «Goldeari heldu eta atzera begiratzen dauana ez da gai Jainkoaren erreinurako».

Jaunak esana.

______________________________________________4

# Urtean Zeharreko XXVI. eguena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Esdrasek legearen liburua zabaldu*
*eta Jauna goratu eban,*

*eta herri osoak erantzun: «Amen, amen».*

Nehemias liburutik

*Ne* 8, 1-4a. 5-6. 7b-12

Egun hareetan, herri osoa gizon bakar bat lez batu zan Ur-atearen aurreko plazan. Jaunak Moisesen bitartez Israeli emondako legearen liburua ekartzeko esan eutsoen Esdras lege-maisuari. Esdrasek Moisesen legearen liburua ekarri eban, gizon-emakume eta ezaguera eben guztien batzarraren aurrera. Zazpigarren hilaren lehen eguna zan. Eta goizetik eguerdira Ur-atearen aurreko plazan batzar osoari irakurtzen jardun eban; herri osoa adi-adi egoan legearen liburua entzuten.

Esdras lege-maisua, haretarako egina eben oholtza gainean egoan zutunik. Esdrasek liburua zabaldu eban herri osoaren aurrean, bera danen gainetik jarrita egoan-eta; liburua zabaltzeaz batera, herri osoa zutundu zan. Gero, Esdrasek Jauna Jainko handia goratu eban, eta herriak, eskuak jasorik, «Amen, amen» erantzun eban; ondoren, makurtu eta lurreraino ahuspeztuz, Jainkoa gurtu eben.

Lebitarrek herriari legearen azalpena egiten eutsoen bitartean zutunik egoan herria. Lebitarrek argi eta garbi irakurtzen eben Jainkoaren legea, esanahia azalduz, herriak ulertzeko eran.

Herri osoak negarrari emon eutson, legearen hitzak entzutean. Orduan, Nehemias gobernariak, Esdras abade eta lege-maisuak eta ziharduen lebitarrek esan eutsoen herriari: «Gaurko eguna Jaunari, geure Jainkoari, sagaratua dogu; beraz, ez egon triste, ez negar egin».

Gainera, esan eutsien: «Zoaze eta jan haragi guria, edan ardao gozoa, eta bialdu janaria ezer prestatuta ez daukienei be, egun hau Jaunari sagaratua da-eta. Ez atsekabetu, Jaunaren poza da-eta zuen indarra».

Lebitarrak be herria nasaitu nahian ebiltzan, esanez: «Ixo! Gaurkoa egun santua da; ez egon triste!» Joan zan, ba, herri osoa jatera eta edatera, eta zer janik ez ebanari be banatu eutsoen; pozaren pozez egin eben jai, ulertu ebezan-eta azaldu eutsiezan berbak.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 19 [18], 8-9. 10-11 (R/. 9a)

R/. **Jaunaren arauak zuzenak dira, bihotzaren pozgarri.**

V/. Jaunaren legea bikain, barrua arnasbarritzen dau;
Jaunaren mandamentua fidagarri, heldubakoa zuhur egiten dau.
Jaunaren arauak zuzen, bihotzaren pozgarri;
Jaunaren agindua distiratsu, begien argigarri. R/.

V/. Jaunaganako begirunea garbi, iraunkor betiko,
Jaunaren erabagiak egiazko, dan-danak bidezko;
urrea, urre araztua baino desiragarriago,
eztia, ezti barria baino gozoago. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Nik badakit nire eskubidearen babeslea bizi dana.*

Job liburutik

*Jb* 19, 21-27

Jobek esan eban:
«Erruki nitaz, erruki, ene adiskideok,

Jainkoak berak zauritu nau-eta.
Zergaitik erasotzen deustazue zuek be, Jainkoak lez?
Zergaitik ez zarie ni biluzteaz aspertzen?
Ai nire hitzak idatziak geldituko balira, liburuan ezarriak!
Edo burdinazko eztenaz eta berunaz
betiko grabatuak hatxean!

Nik badakit nire eskubidearen babeslea bizi dana
eta, azkenean, hautsaren gainetik jagiko dana.
Nire narruazal hau hondatu ondoren,
gorputzik barik, Jainkoa ikusiko dot.
Nik neuk ikusiko dot, eta ez bestek;
neure begiz ikusiko dot.
Bihotza sutan dot neure barruan!»
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 27 [26], 7-8b. 8c-9c. 13-14 (R/. ik. 13)

R/. **Jaunaren ontasuna ikusi ustean nago**
**bizidunen lurrean.**

V/. Entzun, Jauna, nire dei-hotsa,
erruki zakidaz eta erantzun.

Bihotzak esaten deust:
«Bilatu egizu haren aurpegia». R/.
V/. Zure aurpegi bila nabil, Jauna,
ez ezkutatu niri zeure aurpegia.
Ez baztertu zeure zerbitzari hau hasarre,
Zu zaitut-eta laguntza. R/.
V/. Ziur dakit Jaunaren ontasuna gozatuko dodana
bizidunen lurrean.
Itxaron Jaunagan!
Eutsi gogor, izan bihotz!
Itxaron Jaunagan! R/.

### I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mk* 1, 15

R/. **Aleluia.**
V/. **Hurrean da Jainkoaren erregetza, dino Jaunak;**
**bihotz-barritu zaiteze eta sinistu Barri Ona. R/.**

## EBANJELIOA

*Hareen gainean kokatuko da zuen bakea.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 10, 1-12

Aldi haretan, Jaunak beste hirurogeta hamabi ikasle izendatu eta bere aurretik bialdu zituan binaka, bera joatekoa zan herri eta leku guztietara.

Eta esan eutsen: «Uzta ugaria da, baina beharginak gitxi. Egin, beraz, otoitz uzta-jaubeari bialdu dagizala langileak bere uztara. Zoaze! Bildotsak otso artera lez bialtzen zaituet. Ez eroan boltsarik, ez zakutorik, ez oinetakorik, eta ez gelditu bidean inori agur egiten.

Edozein etxetan sartzen zariela, esaizue lehenengo: "Bakea etxe honetakoei!" Eta han bakezalerik bada, haren gainean jarriko da zuen bakea; osterantzean, barriz, zuen bakerik barik geldituko dira. Gelditu zaiteze etxe berean; eta jan eta edan daukienetik, ze, beharginari zor jako bere saria.

Ez ibili etxez etxe. Herriren baten sartu eta ondo hartzen bazaituee, jan ipintzen deutsueenetik, osatu bertako gaixoak eta esaiezue: "Hurrean dozue Jainkoaren erreinua".

Baina herriren baten sartu eta onartzen ez bazaituee, urten plazara eta esan: "Oinetara batu jakun zuen

herriko hautsa be berton astintzen deutsuegu. Dana dala, jakizue hurrean dala Jainkoaren erreinua”.

Begira: auzi-egunean Sodomak zigor bigunagoa izango dau, herri harek baino».

Jaunak esana.

______________________________________5

# Urtean Zeharreko XXVI. barikua

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Pekatu egin dogu Jaunaren aurka eta ez deutsagu obedidu.*

Baruken Profezia liburutik

*Ba* 1, 15-22

Honan egingo dozue otoitz: «Jauna gure Jainkoa bakarrik da zuzena. Gu, barriz, lotsaturik gagoz, gaur ikusi leitekenez; lotsaturik judeguok eta jerusalemdarrok; lotsaturik gure erregeak, agintariak, abadeak, profetak eta gurasoak. Pekatu egin dogu Jaunaren aurka eta ez deutsagu obedidu. Ez dogu aditu Jaunaren, gure Jainkoaren, berbea eta ez deutsegu jarraitu emon deuskuzan aginduei.

Jaunak gure gurasoak Egiptotik atara

ebazan egunetik gaur arte ez gaiakoz Jaunari, geure Jainkoari, leial izan, eta uko egin deutsagu haren berbea entzuteari. Horregaitik, zoritxarrez josiak eta madarikazinopean gagoz; madarikazino hori Jaunak Moisesen bidez adierazo eban, esnea eta eztia darion lurraldea guri emoteko gure asabak Egiptotik atara ebazanean.

Ez dogu aditu Jaunaren, gure Jainkoaren, berbea, eta ez entzunarena egin deutsegu bialdu deuskuzan profeten esanei; bestetara, nork bere barruko jokera gaiztoei jarraituz, jainko arrotzak zerbidu doguz eta Jaunari, gure Jainkoari, atsegin ez jakona egin».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 79 [78], 1-2. 3-4. 5. 8. 9 (R/. 9b)

R/. **Libratu gagizuz, Jauna, zeure izenaren ohoreagaitik.**

V/. Ene Jainko, jentil-herriak zure ondarean sartu dira,

zure tenplu santua profanatu dabe,
Jerusalem hondakin-pilo bihurtu.
Zure zerbitzarien gorpuak
janari emon deutsiez zeruko hegaztiei,

zure fededunen haragia lurreko piztiei. R/.

V/. Ura lez isuri dabe hareen odola Jerusalem inguruan,
eta ez egoan inor lur emoteko.
Auzoko herrien barregarri bihurtu gara,
ingurukoen irain eta burla. R/.

V/. Noiz arte, Jauna? Betiko ete zagoz hasarre?
Noiz arte zure maitasun mindua,
sua lez, gure aurka biztua? R/.

V/. Ez leporatu guri geure aurrekoen erruak!
Betorkigu laster zure errukia,
lur jota gagoz-eta guztiz. R/.

V/. Lagundu egiguzu, gure Jainko salbatzaile horrek,
zeure izenari ohore eginez;
libratu gagizuz eta parkatu gure pekatuak
zeure izenaren ohoreagaitik. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Egun baten be agindu ete deutsazu goizari?*
*Heldu ete zara itsasoaren iturburuetaraino?*

Job liburutik

*Jb* 38, 1. 12-21; 40, 3-5

Jaunak ekatxaren erditik erantzun eutson Jobi:
«Bizitzako egun baten be emon ete deutsazu agindua argi-urratzeari
edo bere tokia izentatu egunsentiari,
lurrari beronen ertzetatik heldurik,
gaizkileak bertatik astindu dagizan?
Lurraren gain-azala eratzen da orduan,
buztina moldean lez,
eta apain jantzia sortzen;
baina ukatu egiten deutse argia gaizkileei
eta hareen asmo gaiztoak galarazo egiten ditu.

Heldu ete zara itsasoaren iturburuetaraino
edo ibili ur-lezearen sakonean?
Erakutsi ete deutsuez Herioaren erreinu iluneko ateak?
Ba ete dakizu zein zabala dan lurra?
Esaidazu, dana dakizun horrek!
Zein da argiaren etxeko bidea? Non da ilunpearen egoitza?
Eroango ete zeunkez euren herrialdera
eta erakutsiko etxerako bidea?
Jakingo dozu, ziur, jaioa zinan-eta orduràko,

eta hainbeste urte dozuz, gainera!»

Jobek erantzun eutson Jaunari:

«Ni ez naz inor, zer erantzungo deutsut?
Eskuaz ahoa itxiko dot.
Behin eta birritan berba egin dot,
eta ez dot beste erantzunik gehituko».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 139 [138], 1-3. 7-8. 9-10. 13-14b (R/. 24b)

R/. **Gidatu ni, Jauna, betiko bidetik.**

V/. Jauna, Zuk aztertzen nozu eta ezagutzen,
badakizu noiz jesartzen nazan eta noiz jagitzen.
Urrunetik sumatzen dozuz nire asmoak;
ohartzen zara noiz nabilen eta noiz natzan,
zehatz ezagutzen dozuz nire ibilbide guztiak. R/.

V/. Nora joan naiteke zure arnasatik urrun?
Nora ihes egin zure aurretik?
Zerura igonda be, Zu han,
Herio-lezara jatsita be, Zu bertan. R/.

V/. Nahiz argiaren sorlekurantz hegaz egin,

nahiz sartaldeko itsas mugetan kokatu,
han be zure ezkerra gainean izango dot,
zure eskumeak helduko deust. R/.

V/. Zuk eratu deustazu barrua,
amaren sabelean eiho nozu.
Eskerrak Zuri, harrigarriro egin nozulako,
miresgarriak dira zure egintzak! R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Sal* 95 [94], 8a. 7d

R/. **Aleluia.**

V/. Gaur, ez gogortu bihotza;
entzun Jaunaren ahotsa. R/.

## EBANJELIOA

*Ni onartzen ez nauanak,*
*bialdu nauan ha ez dau onartzen.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 10, 13-16

Aldi haretan, honan berba egin eban Jesusek: «Ai zu, Korozain! Ai zu, Betsaida! Izan be, Tiro eta Sidon uri jentiletan zuengan hainbat mirari gertatu izan balitz, aspaldi bihotz-barrituak zirateken, dolu-jantziz estaldu eta hautsetan jesarrita. Horregaitik,

Tirok eta Sidonek zigor bigunagoa izango dabe auzian zuek baino.

Eta zu, Kafarnaum, zeruraino altzatuko ete zara? Lurraren barreneraino jausiko zara!

Zuei entzuten deutsuenak Neuri entzuten deust, eta zuek onartzen ez zaituenak Neu ez nau onartzen; Ni onartzen ez nauanak, barriz, bialdu nauana bera ez dau onartzen».

Jaunak esana.

6

---

# Urtean Zeharreko XXVI. zapatua

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Zoritxarra bialdu deutsuenak berak poza emongo deutsue betiko.*

Baruken Profezia liburutik

*Ba* 4, 5-12. 27-29

Izan bihotz, ene herri,
Israelen izenari bizirik eusten deutsazun horrek!
Jentilei salduak izan zarie, baina ez hondatuak izateko;
Jainkoaren hasarrea biztu dozuelako itzi zaitue arerioen esku.
Zeuen Egilea sumindu dozue,

deabruei, eta ez Jainkoari, sakrifizioak eskeiniz.
Ahaztu egin dozue jaten emon eutsuen Jainko betikoa,
eta atsekabetu hazi zinduezan ama Jerusalem.

Jainkoaren zigorra gainean zala ikustean, Jerusalemek esan eban:

«Entzun, Siongo auzook:
nahigabe handia bialdu deust Jainkoak.
Seme-alabak katigu joaten ikusi ditut,
Jainko betikoak bialdurik.
Pozik hazi nebazan, negarrez eta nahigabez itzi deutset joaten.
Ez bedi inor poztu, ni alargun eta danek baztertua ikustean:
seme-alaben pekatuakaitik gelditu naz bakarrik,
Jainkoaren legetik desbideratu diralako.

Izan bihotz, ene seme-alabok, eta egin deadar Jainkoari!
Gogoratu da zuetaz
zoritxarreko egoera horretara eroan zaituena.
Lehenean Jainkoagandik urruntzea

erabagi bazenduen be,
bihurtu orain beragana, gogotsuago oraindino bera bilatuz.
Zoritxarra bialdu deutsuenak berak
salbatuko zaitue eta poza emongo betiko».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 69 [68], 33-35. 36-37 (R/. 34a)

R/. **Entzun deutse Jaunak behartsuei.**

V/. Ikusi egizue, apalok, eta poztu,
izan bihotz, Jainkoaren bila zabiltzenok.
Izan be, entzuten deutse Jaunak behartsuei,
ez ditu gitxiesten berari lotuak.
Goratu begie zeru-lurrek,
itsasoak eta bertan bizi diran guztiek. R/.

V/. Salbatuko dau, bai, Jainkoak Sion,
eraikiko ditu barriro be Judako uriak;
bertan biziko dira eta haren jaube izango.
Jainkoaren zerbitzarien ondorengoak izango dira oinordeko,
haren izena maite dabenak han biziko. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Orain, neure begiz ikusi zaitut!*
*Beraz, damutzen naz esandakoaz.*

Job liburutik

*Jb* 42, 1-3. 5-6. 12-16 (heb. 1-3. 5-6. 12-17)

Jobek erantzun eutson Jaunari:
«Badakit dana zeinkela Zuk,
ez dagoala ezinezko egitamurik Zuretzat.
Zeuk esana da:
"Nor da nire egitasmoa amatatzen dauana, ezer jakin barik?"
Bai, jakin barik berba egin dot
ulertu ezin dodazan misterioei buruz.
Entzutez bakarrik ezagutzen zindudazan;
orain neure begiz ikusi zaitut!
Beraz, damutzen naz esandakoaz,
hautsean eta errautsean jesarrita».

Ondorengo urteetan aurrekoetan baino oparoago bedeinkatu eban Jaunak Job: hamaika mila ardi, sei mila gamelu, mila idi-pare eta mila asteme izan ebazan. Zazpi seme eta hiru alaba be izan ebazan. Alaba zaharrenari Usoa jarri eutson izena, bigarrenari Kanela

Lorea, eta hirugarrenari Lurrunontzi. Ez zan herrialde osoan Joben alabak baino emakume ederragorik; eta semeak lez, oinordeko egin ebazan Jobek.

Harrezkero, ehun eta berrogei urtez bizi izan zan Job, eta bere seme-alabak eta seme-alaben seme-alabak laugarren belaunaldira arte ikusi ahal izan ebazan. Zahartuta eta urtetsu hil zan Job.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 119 [118], 66 eta 71. 75 eta 91. 125 eta 130 (R/. 135a)

R/. **Erakutsi aurpegi argia, Jauna, zeure zerbitzari honi.**

V/. Irakatsi niri ondo bereizten eta ezagutzen,
fidatzen naz-eta zure aginduez.
On egin deust atsekabetua izateak,
zure arauak ikasteko. R/.

V/. Badakit, Jauna, zure erabagiak zuzenak dirana,
leialtasunez atsekabetu nozuna.
Gaur arte diraue gauza guztiek zure erabagiz,

danak menpeko dozuz-eta. R/.
V/. Zeure zerbitzari nozu, emoidazu adimena,
eta ezagutuko ditut zure aginduak.
Argigarri da zure hitzen adierazpena,
adimena emoten deutse ezikasiei. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Mt* 11, 25

R/. **Aleluia.**
V/. Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna,
erreinuari buruzko Barri Ona
jente xumeari agertu deutsazulako. R/.

### EBANJELIOA

*Poztu zaiteze zuen izenak zeruan idatzirik dagozalako.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 10, 17-24

Aldi haretan, hirurogeta hamabi ikasleak pozez beterik bihurtu ziran, eta esan eutsoen Jesusi: «Jauna, deabruak be menpean jartzen jakuz zure izenean».

Jesusek erantzun eutsen: «Oinaztua lez zerutik jausten ikusi dot Satanas.

Begira, sugeak eta eskorpioiak zapaltzeko eta arerioaren indar guztiak azpian hartzeko ahalmena emon deutsuet, eta ezin izango deutsue ezerk be kalterik egin. Halan be, ez poztu espirituak menpean jartzen jatzuezalako; poztu, bai, zeuen izenak zeruan idatzita dagozalako».

Une haretan, Jesusek, Espiritu Santuaren pozez beterik, esan eban: «Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna, gauza honeek jakitunei eta burutsuei gorde eta jente apalari agertu deutsezuzalako. Bai, Aita, halan izan dozu gogoko. Nire Aitak dana emon deust, eta ez dau inork ezagutzen Semea nor dan, Aitak baino; ezta Aita nor dan be, Semeak baino eta Semeak agertu gura deutsonak baino».

Eta ikasleakana bihurturik, esan eutsen eurei bakarrik: «Zorionekoak, zuek ikusten dozuena ikusten daben begiak. Hara zer dinotsuedan: profeta eta errege askok ikusi gura izan eban zuek ikusten dozuena, baina ez eban ikusi, eta entzun zuek entzuten dozuena, baina ez eben entzun».

Jaunak esana.